# ALZO-CO NECAZARI MANUEL ANTONIO IMAZ-EC
# MISIO SANTUA IZAN DUTEN ERRICO CRISTAUAI.

1.
Erriyan izan degun
Mišio santuac,
Emango ditu frutu
Guciz gozuac:
Jaungoicoaren ministro
Mišioneruac
Ederqui esan digu,
Utzi biciyuac,
Ta emengo gustuac:
Ez izan zoruac,
Bada Jaungoicoac
Nai gaitu cintzuac,
Nola esango duten
Nere bersoac.

2.
Espiritu Santua
Nator zuregana,
Jaquiñic laguntzalle
Ona cerana:
Gracia bat indazu
Escatzen dedana,
Canta onac jartzeco
Conbeni zaidana,
Para nai det plana
Bicitza on bana
Eraguin dezana,
Guero zori ona,
Eguiten bada emen
Aguintzen dana.

3.
Umeen criantza ta
Guero nola bici,
Cantuan nai nituzque
Adieraci:
Lenengo batayoa
Beintzat ar-eraci,
Griña charric badacar
Laster galeraci,
Aditu Imaz-i
Cuidadotan aci,
Ez nola nai utzi
Mantendu ta jantzi,
Dotriña onarequin
Gazteric eci.

4.
Gurasoac aurracquin
Neque asco ditu,
Umeac gueró bear
Corresponditu:
Zartuac bajeza ta
Flaqueza oi ditu,
Pacienciarequin
Gucia sufritu,
Humill obeditu,
Izquetan cumplitu,
Obraz socorritu,
Honrac añaditu,
Ala ere zorretan
Oi da gueldilu.

5.
Etsai gaizto oriec
Daude gallarduac,
Araguia libre ta
Pompac munduac:
Contuz ezpagabiltza
Guerade galduac,
Ezagutu ditzagun
Gueren estaduac,
Atera contuac,
Badatoz orduac,
Artzeco carguac
Jaungoico justuac,
Nola eguin ditugun
Arc aguinduac.

6.
Pecatua Jaunaren
Contra da sortua,
Eguiten duana da
Gorrotatua:
Jauna gandic gueldilzen
Da apartatua,
Infernuco bidean
Aurrera sartua,
Deabruac artua,
Desgraciatua,
Sentenciatua,
Madaricatua,
Ezbada conbertitzen
Condenatua.

7.
Mancha quendu nai badu
Pecatuarena,
Ondo confesatzeco
Degu ordena;
Concienciarena
Examiña aurrena,
Damu eguiazcoa
Culpa guciena,
Proposilu ona,
Aitormen zucena
Confesoreagana,
Cumpli arc esana
Garbi gueldilzen da
Au eguiñ duana.

8.
Conciencia ondo
Aurrena garbitu,
Guero Jaun divinoa
Errecibitu;
Facultade aundiac
Arc berequiñ ditu,
Obra on oyetara
Ez iñor naguitu,
Lembailen muguitu,
Berari seguitu,
Arrequiñ unitu,
Berequiñ gueldilu,
Alá graciaz ondo
Beteco gaitu.

9.
Jayotzen dan guciac
Zor du eriotza,
Orrec consolatutzen
Ez du biotza;
Noiz, nola, nun jaquiñ-ez,
Ichumen, tristeza,
Ilda noraco gueran
Ordago zalantza,
Onena dan gauza
Etsayari baza
Irabaci beza,
Orduan bai poza,
Anima garbi ta alái
Entrega beza.

10.
Juicioa daucagu
Il da bereala,
Ez pensatu au gabe
Libre guerala:
Obra on eta charrac
Anche ditugula,
Juzgatzen egongo da
Juez erreala,
Beguira dagoala
Etsai inpernala,
¡A cer tribunala
Justu ta formala!
Sentenciatuco da
Bear becela.

11.
Pecatu mortalean
Emen iltzen danac
Infernuan pasatu
Bearco penac:
Aundiac eta beti
Iraungo dutenac,
¡¡Ah cer paraderoa
Gaizqui dabillenac,
Utzeguin zuanac,
Instanteac joanac
Zucentzeco lanac,
Orra modu onac,
Esperantza bat ez du
An dagoanac!!

12.
Tribunal artan ongui
Bada ateratzen,
Seculaco dicha du
Aseguratzen:
Ta purgatoriuan
Ez bada gueratzen,
Pecatuaren zorrac
Oso pagatutzen,
Ceruan da zucen
Jauna alabatzen
Eta artzaz gozatzen,
Saya gaitecen
Bacoitzac bere anima
Garbi gordetzen.

13.
Purgatorio artzaz
Itzeguiñ nai nuque,
An dagoan gaišoac
Irten nai luque;
Batez ere plazoa
Lucea baluque,
Anche badago cembait
Pena eta neque,
Berac ez dezaque,
Ta guc baguentzaque,
Guri daude esque,
Gu ere juan guintezque,
Ordañetan libratzen
Saya gaitezque.

14.
Salbatzeco ez guera
Cembait ondo ari,
Barcatu nai ecican
Gaizquilleari:
Gorrotodun citalac
Bagaude ugari,
Bengantza eguiteco
Gaitz nai digunari,
Guc projimoari
Becela diruri
Jaungoicoa guri
Barcacio ori,
Ala escatu cion
Cristoc Aitari.

15.
Munduan eguiteco
Bicitza on bana,
Alcar amatutzea
Da bear dana:
Lagunac serbitzea
Cariñozco lana,
Iñori opa berac
Naico luqueana,
Besteac gugana
Ta guc ayegana
Borondate ona,
Ez laburtu cana,
Au da dotriña Cristoc
Maite daucana.

16.
Perseguitzen gaituzte
Animen etsayac,
Munduac, demonio
Ta araguiac:
Pecatu capitalac
Gueroquin guciac,
Mendean artu gaitu
Ia soberbiac,
Ta avariciac,
Su du lujuriac,
Irac, envidiac,
Gula itsusiac,
Eta birtuteraco
Gaude naguiac.

17.

Norc bere soberbia
Ondo humillatu,
Desordenan gauzaric
Ez deseatu:
Lujuriaren sua
Asco castigatu,
Ez ira, ez venganza,
Paciencia artu,
Ta gula templatu,
Ez enbidiatu,
Caridadea amatu,
Naguiac ascartu,
Diligenciac eguiñ
Nola salbatu.

18.

Gure Juez arc ez du
Testigu bearric,
Juzgatzeco asco da
Bera bacarric:
Ez da engañatuco
Duan aiñ azcarric,
Ez dio iñorc sartzen
Eguitzat guezurric,
Zucentzat oquerric,
Biguntzat gogorric,
Ezdago bildurric,
Nai arren alperric,
Impernura, duana
Culpa mortalic.

19.

Eternidadea da
Arrigarri dana,
Lucean caburican
Ezdaducana;
Izate bat beñere
Aituco ezdana,
Guc ere ala degu
Animacho bana,
¡Jesucristo Jauna!
Jabe zaituguna,
Aguintzen dezuna
Bici lecu ona,
Betico logratzera
Gatoz zugana.

20.

Cristo zorionean
Etorri citzaigun,
Eracustera nola
Bici biagun:
José eta Maria
Ere gure lagun,
Cer amparatzalleac
Irurac dauzcagun,
Cembat zor diegun,
Pensatu dezagun,
Esca deguiegun
Beti gau ta egun
Etsai guciac ala
Benci ditzagun.

21.

Obra onac errezo
Ta caridadeac,
Misericordia ta
Piedadeac,
Guardatzen dirala
Jaunaren legueac,
Dirua baño oec
Gueroco obeac:
Bay, cristau nereac,
Au dacar fedeac,
Orla eguiteac,
Cerura bideac,
Zorion beticoa
Santidadeac.

22.

Estadu asco daude
Guc escogitzeco,
Nai bada libre bici
Naiz escontzeco:
Sacerdote orobat
Naiz monja sartzeco,
Conbeni dana artu
Norc nai beretzaco,
Jauna serbitzeco,
Eta amatzeco,
Justu bicitzeco,
Gracian iltzeco
AMEN, betico dicha
Alcantzatzeco.

Azpeitia: Imp. de Pablo Martinez.